# ESTAFETAKO EGUNA '22







JR BAND

12.00 VERMUTHIKO

15.00 BAZKARIA-COMIDA

16.00 SOBREMESA MUSICAL

17.00 MONOLOGO BAKARLARIA

19.30 JULIAN ROMANO BAND

21.30 GIRO EDERRA PEÑAKO DJS

BAZKARIA 30€

19 NOVIEMBRE AZAROAK 19

# AURKIBIDEA



Kantatzen duen herria
***ez da inoiz hilko!***

***Etxakilarena Fanfarrea,***
*(679434487)*

## 1-IXIL IXILIK DAGO

Ixil ixilik dago, kaia
barrenian
Untzi xuri pollit bat uraren
gainean.

Goizeko ordu bietan
esnatutzen gera
Arrantzaliak beti
Joateko urrutira.

Zergatik zergatik zergatik
zergatik!!!!!
Zergatik negar egin ?
Zeruan izarra dago itsaso
aldetik.

Pasatzen naizenean
zure leihopetik
Negarra irtetzen zait
Begi bietatik

zergatik zergatik …

Bat,bat,bat,
bart parrandan ibili,
bart parrandan ibili.
Bi,bi,bi,
ez naiz ondo ibili,
ez naiz ondo ibili.

Hiru,hiru,hiru,
kolkoa bete diru,
kolkoa bete diru.

Lau,lau,lau,xardina bakalau.

Anteron txamarrotia,
Sinkerren bibotia,
haretxek ei dauka, ei dauka
preso tximinoia.

Hau dek, hau dek,
hau dek umoria,
kontsolatzeko,
kontsolatzeko,
euskaldun jendia.

Kalian gora,
kalian behera
kalian gora zezena,
ai, ai, ai, ai

Kalian gora
kalian behera
kalian gora
kalian behera
kalian gora
kalian behera
kalian gora zezena.

## 2-BAGARE

Araban bagare
Gipuzkun bagera
Xiberun bagire
Ta Bizkaian bagara.(Berriz)

Baita ere,
Lapurdi ta Nafarran.

Guztiok gara eskualdun
guztiok anaiak gara
Nahiz eta hitz ezberdinez
Bat bera dugu hizkera.
(Berriz)

Araban bagare .....

Herri bat dugu osatzen
eta gure zabarkeriz
ez daigun utzi hondatzen.
Bagare,bagera
Bagire,bagara
euskera askatzeko
oraintxe dugu aukera.

Bagare,bagera,
bagire,bagara
Euskadi askatzeko
oraintxe dugu aukera.

## 3-AITA-SEMEAK

Aita-semeak tabernan
daude, Ama-alabak jokoan.
(Berriz)

Berriz ikusi beharko dugu
Behi gizena auzoan,
Berriro ere ez da faltako
Trapu zaharrik kakoan.

Aita-semeak tabernan
daude,.....

Eta lapurrek ohostu dute
Guk gendukana etxean,
Eta gu gaude erdi biluzik
Beti inoren menpean.

Aita-semeak tabernan
daude,.....

Hondamendia gertatu zaigu
Geure etxean horrela,
Guztiok bizi nahi dugu baina
Nola biziko bestela?

Aita-semeak tabernan
daude,.....
Geurea dugu erru guztia
Geurea dugu osoa,
Ez inori ba errua bota
Euskal Herria hiltzean.

Aita-semeak tabernan
daude,.....

Baina gaztea naiz eta daukat
Etorkizuna eskuan,
Ez zaigu hilko Euskal Herria
Ni bizi naizen artean.
Aita-semeak tabernan
daude,....

## 4-ARBOLA

Arbola gainean xoria da
kantatzen
kantatzen da eta bazterrak
inarrosten
inarrosi eta hostoa da
erortzen
euskal bihotza da bilaiz
egoiten
bilaizi ondoan
han dira errabian
xiloka beltzian handik elki
nahian
handik elki eta kantatzera
abian
lagunzonbait bidian ikusiko
agian.

La,la,la,..

Gaur Euskal Herrian zuhaina
da landatzen
landatzen da eta
gero fruitu ekarten
fruitu ekar
eta haizea da kexatzen
iraultzalaria
madarikatzen...

jar giten ildoan igeli izerdian
izerdian eta lepozainak
hegian
besoez ta botzez hortzez eta
haginez lagun bat zorionez
ikusiko dugunez.

La,la,la,...

## 5 - BARATZE BAT

Hau da egün eijerra
mila txoriek kanta
tziauri ene erregina
besoak zuri ditizüt para.

Baratze bat nahi dizüt egin
amets sekretuenekilan
liliak egün jauntzi
eijerrenetan
mila kolorez dantzan
bihotzetan.

Gaü beltz ta sakonetik
jeikitzen naiz hoztürik
bihotza hain tristerik
usu hitaz berantetsitürik.
Baratze bat bat nahi dizüt
egin .....

Karrosa bat hor dugu
kanpoan gure aiduru
ez gal aboro denbora
hiskor beitago amodioa.

Baratze bat bat nahi dizüt
egin .....

Maitarzun berriari
ilargiak dü argi
emanen deikü aski
guk elgar maita dezagun
beti.

## 6-TXORIAK TXORI

Hegoak ebaki banizkio
neria izango zen
ez zuen alde egingo

Bainan honela
ez zen gehiago txoria
izango

eta nik txoria nuen maite,
eta nik
txoria nuen maite.

Hegoak ebaki banizkio
nerea izango zen
ez zuen alde egingo.

Lala lalala.

## 7-XALBADORREN HERIOTZEAN

Adiskide bat bazen
orotan bihotzbera
poesiaren hegoek
sentimenduzko bertsoek
antzaldatzen zutena.

Plazetako kantari
bakardadez josia
hitzen lihoa iruten
bere barnean irauten
oinazez ikasia...ikasia

Nun hago, zer larretan
Urepeleko artzaina
mendi hegaletan gora
oroitzapen den gerora
ihesetan joan hintzana.

Hesia urraturik
libratu huen kanta
lotura guztietatik
gorputzaren mugetatik
aske sentitu nahirik.

Azken hatsa huela
bertsorik sakonena,
inoiz esan ezin diren
estalitako egien
ohirik bortitzena
bortitzena.

Nun hago….

## 8-EUSKAL HERRIAN EUSKARAZ

Euskal Herrian euskaraz
nahi dugu hitz eta jolas
lan eta bizi euskaraz eta
hortara goaz,
bada garaia noizbait
dezagun
guda hori gal edo irabaz.

Zabal bideak eta aireak
gure hizkuntzak har dezan
arnas,
bada garaia noizbait
dezagun
guda hori gal edo irabaz.
Euskal Herrian euskara
hitz egiterik ez bada
bota dezagun demokrazia
zerri askara
geure arima hiltzen uzteko
bezain odolgalduak ez gara.

Hizkuntza gabe esaidazue
nola irtengo naizen plazara,
geure arima hiltzen uzteko
bezain odolgalduak ez gara.

Euskal Herri euskalduna
irabazteko eguna
pazientzia erre aurretik
behar duguna,
ez al dakizu euskara dela
euskaldun egiten gaituena?
Zer Euskal Herri litzake bere
hizkuntza ere galtzen duena.

Ez al dakizu euskara dela
euskaldun egiten gaituena?

## **9-SALAMANKARA**

Gazte gaztetik aitak ta amak
fraile ninduten nonbratu
bai eta ere estudiora
Salamankara bidaldu.
Salamankara nindoalarik
bidean nuen pentsatu
estudiante tunante baino
hobe nuela ezkondu.

Ostatu xume polit batean
gosez gelditu bainintzen
neska xarmant bat ari
zitzaidan
mahainean zerbitzatzen.
Begia kartsu,ezpaina lore,
enekin aise mintzatzen
aingeru hori ordu berean
ene bihotz barnean zen.

Hitz erdi batez maite nuela
erran nion belarrira
baina,gaixoa, herabetua
ihes joan zen kanpora.

Ez ahal nauzu,
izar ederra,
kondenatzen infernura!

Ez da sekulan ene gogotik
histuko zure itxura.
Aita Jainkoak egin banindu
zeruetako giltzari
orduntxe bai jakinen nuen
atea nori ireki.

Lehenik aitari,gero amari,
gero anai-arrebari,
ta azken orduan isil-isilik
nire maite politari

## 10-ITSASONTZI BATEN

Itsasontzi baten
Euskal Herritik kanpora
naramate eta ez dakit nora.
(Berriz)

Agur nere ama laztan
goxoari
Agur nere maite
politari
ez egin negar
etorriko naiz
egunen baten
pozez kantari.

Itsasontzi baten .....

Agur senideak
agur lagunari
agur Euskal Herri
osoari.
Ez egin negar
etorriko naiz
egunen baten
pozez kantari.
Itsasontzi baten ....

Gora Euskal Herri!
Gora Euskal Herri!
Gora Euskal Herriari!!!

## 11-EPERRA

Eperrak badituzü
bere bi hegalak
Bai eta bürün gainin
kokarda eijer bat
Zük ere balinbazünü
gaztetarsün eijer bat

Neskatilen gogatzeko bilo
holli pollit bat.
Amorosak behar lüke izan
lotsa gabe

Gaiaz ebiltia ez üken herabe
Egünaz ebiltia desohore leike
Txoriak ere oro haier soz dirade.

Ebili izan nüzü gaiaz eta beti
Eia! atzamanen nianez lili eijer hori
Azkenian atzaman düt oi! bena tristeki
Lümarik eijerrena beitzaio erori.

Mündian ez da nihur penarik gabe bizi
Nik ere badit aski hoitan segurki
Nik desiratzen nizün ezkuntzia zurekin
Bena ene aitak eztü entzün nahi hori.

Zure aitak zer lüke eni erraiteko
Ala enitzaio aski haren ofizioko
Ala zü soberaxe zitzaio enetako
Printzerik ez ahal da orai zuenganako

## 12-GOIZIAN GOIZ JEIKIRIK

Goizean goiz jeikirik, argia gaberik,
urera joan ninduzun pegarra harturik.
Jaun xapeldun gazte bat jin zautan ondotik
heia nahi nuenez urera lagunik.

Nik ez nuela nahi aurera lagunik,
aita beha zagola salako leihotik.
Aita beha zagola, ezetz errangatik,
pegarra joan zerautan besotik harturik.

Urera ginenian, biak buruz buru,
galdigin zautan ere: - “Zonbat urte tuzu?”

-“Hamasei… hamazazpi
orain'ez konplitu
zurekin ezkontzeko
gaztexegi nuzu.

Etxerat itzultzeko nik dutan beldurra,
ez jakin nola pentsa amari gezurra!”
-“Neskatxa, nahi duzu nik erakuts zuri
etxerat etortzean zer erran amari?”

“Urzo xuri pollit bat, gabaz dabilana,
hark ura zikindurik, egotu naiz, ama.”
-“Dakigunaz geroztik zer erran amari,
dugun pegarra pausa,
gaitezen liberti.”

## **<u>13-MAITIAK GALDEGIN ZAUTAN</u>**

Maitiak galdegin zautan,
polit nintzanez (Berriz)
Polit,polit nintzela baina,
Larrua beltz,larrua beltz!

Maitiak galdegin zautan,
premu nintzanez (Berriz)
Premu,premu nintzela baina
,
Etxerik ez,etxerik ez!

Maitiak galdegin zautan,
poltsa banuenez (Berriz)
poltsa,poltsa banuela baina,
Dirurik ez,dirurik ez!

Maitiak galdegin zautan
lana banuenez (Berriz)

Lana,lana banuela
baina,gogorik ez,
gogorik ez!

Gaixoa hil behar dugu
guk biok gosez (Berriz)
Gosez,
gosez hil behar baina,
elkar maitez,elkar maitez.

## 14 -GORA TA GORA BETI

Gora ta gora beti,
haik gora Lapurdi!
Euskerak bizi gaitu
eta bizi bedi.

Gorantza doa agudo
kapitala
eta Lapurdi beti dago apala,
aldrebesturik dago mundu
zitala,
konformatzen ez bagara
ze pekatu mortala!

Gurea ez da bizi-modu
normala
lurra lantzeko haitzurra eta
pala, lanaren truke
kobratzen erreala.
Benetan da miserable
euskaldunon jornala.
Munduan ezin bizi daiteke
hala,
merkatuetan dena gora
doala,etxera eta zopa guztiz
argala,
kriseiluen oiloa
ez da postre formala.

Obrero eta nekazari leiala,
zuena ez da errenta liberala.
Diru zikinak putre motzak
bezala
botatzen dizu gainera
hortxe bere itzala.

Jabeek dute kontzientzi
zabala,
kaskatu dute gure lurren
azala,
baina Lapurdi ez da hain
zerbitzala;
burruka garbian dago
hori da printzipala!

## 15-AITORMENA

Ez dira betiko garai onenak
azken finean gizaki hutsak
gara
Barearen ostean dator
ekaitza
Udaberri berririk ez guretzat

Denborak aurrera
etengabian
ta orain ezin eutsi izan
giñana

rutinaren morroiak bihurtu gara
laztana lehen baino
lehen aska gaitzetan.

Ohartu gabe arrunt bilakatuta
Ohartu gabe heldu gara mugara
Mundua jautsi zaigu gainera
maitia lehen baino
lehen aska gaitzetan.

Ez dakigu non dagoen hoberena
Bila dezagun beste lekuetan
Ba, zin dagizut ez dizudala
inoiz gezurrik esan eta
zaude zihur ezin izango
zaitudala ahaztu inoiz
aitortzen dut izan zarela
ene bizitzaren onena
baina orain, maitia lehen baino
lehen aska gaitzetan.

## 16-ZAZPIAK OHIAL BATETIK

Mundu guztiak aditutzen du
euskaldunaren negarra
alde batera nahiago nuke
ez banintz hemengotarra.

Enpeinatzea ez bada libre
alferrik dugu indarra
hau da txoria gari tartean
goseak egon beharra.

Antzerki hontan lau pertsonaia
ta jokalari bakarra
arbolak berak erakusten du
ostoa eta adarra.

Enpeinatzea ez bada libre.....

Sutan pizturik darrai oraindik
sugai berriz lehengo gerra
oharkabean ez zen mintzatu
Txirrita poeta zaharra.
Enpeinatzea ez bada libre...

Zazpi ahizparen gai den
oihala ebakirikan erditik
alde batera hiru soineko
utzirikan lau bestetik.
Guraiziakin bereizi arren
bakoitza bere aldetik
ezagutzen da jantzi direla
zazpiak oihal batetik

Oihal bera da gure jantzia
sortu gintuzten unetik
ez du munduak kemenik
sortu kentzeko gure soinetik
Guraizkiakin bereizi arren.....

## 17-ILUNTZEAN

Ilargia uretan murgildu da
itsas arrain txikien ondora
uraren hozkirriaren zirrara
hondar epelaren alboan.
Iluntzean uraren ertzean
errainu baten argia,
ene maite biok jolasean
olatu zipriztin artean.

Haizeak zimurtu du itsasoa
kresalak lehortu malkoa,
maite zure zain hementxe
naukazu
izar goiztiarrei begira.

Iluntzean uraren ertzean...

txuri zaude ta malkoak
zure kolorea kentzen dute.
Lau teilatu...

## 18-ABERRIAREN MUGAK

Nire aberria lurra bezain
zaharra da
baina ez da lurra bakarrik
haizeak bezala inguratzen
nau eta
lotzen, askatzen nauelarik.

Aberriaren mugak;
euskarenak
gure baitan daude gehienak
euskara zabalduaz lau
haizeetara
zabalago egiten gara.

Nire aberria suaren
antzekoa da
beti bera,berria beti
epeltzen nau kanpoan hotz

dagoenean
´ta erretzen ere badaki

Aberriaren mugak...

Nire aberria harrizko herria
da
hitzezkoa eta hitzekoa
altzairuzko txakolin, ardo
zurezkoa
eta hondar anonimoa.

Aberriaren mugak...

Nire aberria burdin bihurria
da
oroimenean arindua
itsaslaminen baten
herdoilezko kantu
etorkizunez fosildua.

Aberriaren mugak...

**19-LAU TEILATU**

Hemen gaude
ta poztutzen naiz
ta ziur zure aita ere bai
ta zer ondo... zelan dijua
zure bufanda txuria.

Lau teilatu gainian
ilargia erdian eta zu
goruntz begira,
zure keia eskuetan
putzara batekin... putz!
Neregana etorriko da
ta berriz izango gara
zoriontsu
edozein herriko jaixetan.

Goxo goxo
kanta egin nazu
Benitoren Maria Solt.
negarrik ez,
txuri zaude ta malkoek
zure kolorea kentze dute

Lau teilatu gainian…

Felix, felix bihar
berriz egongo gara
Txanpain apur batekin.
Diru gabe baina,
izarrak gurekin daude,
piano baten soinuaz

Lau tailatu gainean…

## 20- GUK EUSKARAZ

Guk euskaraz
Zuk,zergatik ez?
(Berriz)

Euskara putzu sakon
eta ilun bat zen,(Berriz)
eta zuek denok ur gazi bat
atera zenuten
handik nekez.(Berriz)

Guk euskaraz .....

Orain zuen birtutez
zuen indarrez (Berriz)
euskara itsaso urdin
eta zabal bat izanen da
eta guria da.(Berriz)

## 21-EGINA

Hitzak ikasiz eta hizketan
hasiz, irudimenean
Geure pentsaerari aske
izaten utzi genion aidean
Elkartrukatuz, idatziz ta
irratiz hegan geundenean
Hitza nola ebaki daitekeen
erakutsi ziguten bidean...
"Egin" hil nahiean!

Eskurik esku "Egin" berria
helburu
Isildu gabe berdin hitz
egingo dugu.
Eskurik eskuekin geroa
seguru
Geurea dugu eta "Gara"
egin dugu

Egin ta egin, bultza ta
bultza,
Denon ekimen, denon
laguntza
Egin behar da, egingo dugu
Denon ekimen, denon
helburu
Herririk herri, zaharrak berri
Herriak orri, orriak herri
Ekarpenekin, elkartuz ekin
Orririk orri, egin ta egin.
Bultza ta bultza, indarrak
biltzen
Indarrak bultzaz, indar
berritzen
Lehen baginen, orain
bagara

Indarrak biltzen, jaio da
"Gara"
Orain bagara, lehen
baginen
Jaio da "Gara", jaioak ginen
Egin nahi zena, ekin ta ekin
Egin da "Gara", "Gara" da
"Egin"

## 22-SARRI-SARRI

Ez dakit zer pasatzen den
azken aldi hontan
jendea hasi dela dantzatzen
sarritan
zerbait ikustekoa du
bi falta direlakoz
«Recuento generalean».

Sarri, Sarri, Sarri, Sarri, Sarri,
Sarri,
Sarri, Sarri, Sarri, Sarri, Sarri
askatu,
Sarri, Sarri, Sarri, Sarri, Sarri,
Sarri, bi batu.

Irratikoak han ziren
emititzen zuzenean
paella jango zutela
eta Piti eta Sarri bere
muturretan
saltzan zeudela konturatu
gabeak.

**Sarri, Sarri...**

Zaila dugu sortzea
doinu gogozagorik
Sarri dio herriak
txanpainaz ospaturik
Iruñeko entzierroa
desentzierroa hemen
zapi gorriak
zerua du estaltzen.

Ez dakit zer pasatzen...

**Sarri, Sarri...**

Sarri, Sarri, Sarri, Sarri, bi
badoaz,
Sarri, Sarri, Sarri, Sarri,
hanka kalera
Sarri, Sarri, Sarri, Sarri,
bafleetatik...
kriston martxa dabil!

## 23-KAIXO

Trikitixa dantzatu nahiko
nuke
edozein herritako jaietan
trikitixa dantzatu nahiko
nuke
geure begiak topatuz
plazan.

Maitemindurik nago eta
zu oraindik ez zara
konturatu;
egunez mozkorturik nauzu
eta gau aldean ezin loak
hartu.

Zu hor zabiltza dantzan eta
ni hemen hurrun ez
dakidalako ...
norbaitek erakutsiko balit!
-Kaixo!
-Kaixo!
-Zelan?
-Ondo, ta zu?
-Beno..
-Zer ba?
-Begira.
-Esan.
-Heldu!
-Bihotza da!
Bihotza da

## 24- GOGOAREN BAITAN

Erabaki nuen tinko ta
fermuki
ez zitzaidala gertatuko,
maitasun saretan ez nintzela
berriz
ustekabean eroriko.

Bi begi izpitxu, irribar ezti
bat
izan dira nere galtzaile,
geroztik hor nabil arantzetan
dantzan,
ezinezko amets sortzaile.
Urrezko txanpon bat
emango gogo nuke,
sorgin bat bilaka banedi,
ezina egikor aldatzeko adina
gezurra bihurtzeko egi.
Zer den ona edo zer den
txarra
jakin beharko nukelarik,
sumendi gainean erretzen

ari naiz,
ba al dago irtenbiderik?
Zu hor zaude, dantzan,
jauzitan,
zer deabru bada pasatzen
zait
gogoaren baitan.
Geroak zer dakar? Ez dut
pentsatu nahi,
uneak nahi ditut bizi,
lau egun dira ta bi omen
lainotsu,
galtzera ez ditut nahi utzi.
Hitzaren jokoan, itxura
emanez,
gorde nahiko nuke dena,
biluzia nauzu izan zarelako
egoera hunen sormena.

**25-FESTARIK FESTA**

Nahiz gauza asko ezagutu
munduan
Bada zertxobait hartu nahi
dut kontuan
Ez dakit nola esplikatu
kantuan
Neskatxa bat dut hemen
nire onduan.

Gure bizitza juerga eta
parranda
Gero egunez lo egiten dugu
etzanda
Horren errudun etsaien bat
izan da
Gu non gabiltzan seguru
bera han da.
Festarik festa lan egin behar
gauero
Festarik festa hor nabil ni
egunero
Gure etsaia benetan dago
ero
Zigortzen gaitu inoiz
hutsegin ezkero.

Aizu neskatxa ba al dakizu
benetan
Norekin hasi zeran hartu-
emanetan?
Hau da egia ziur zaude
horretan
Bihurtu leike maitasuna
penetan.

Komplikazio anitz bada
gurekin

Bizitza honi ezin diogu
aldegin
Nire aukera ez bazaizu
atsegin
Gure artekoa beharko da
desegin.

Festarik festa lan egin behar
gauero…

## 26-ILARGIA (ken7)

Esaiozu euriari berriz ez
jauzteko,
esan bakardadeari gaur ez
etortzeko.

eusten nauen soka zara eta
itotzen nauena,
ametsak sortu zizkidana,
galtzen dituena.

zuretzat ilargia lapurtuko
nuke gauero,
eta zu itsu zaude bere argia
ikusteko,
irribarrez, gero minez,
eragin didazu negarra,
nire sua itzali da,
ez zara gaueko izar bakarra,
ez zara!!

esan sentitzen dudana ez
dela egia,
une baten sinesteko ez
garen guztia.

## 27- MAITE ZAITUT

Koloretako ametsak
esna nagoenean
eta ezin loak hartu
gaua iristen denean.

Saltoka hasita hegan
egiteko gogoa,
nire bihotza taupaka
aire ertzera doa.

Elkarrekin hankaz gora
buruz behera jartzean,
tunelean sartu eta
irrintzika hastean,
bitxiloreekin pultsera
egin dizudanean,
begietara begira
hauxe nahi dizut esan:

Maite zaitut,
maite- maite zaitut;
pila, pila, pila patata tortilla!
Maite zaitut. Maite-maite
zaitut,
ilargiraino eta buelta maite
zaitut
Begietako dirdira,
irribarrea ahoan,
ezin ditut ezkutatu
zu ikusterakoan;
hanka eta eskuetan,
gorputzean, dardara;
nire bihotza taupaka
aire ertzera doa.
Elkarrekin ortzadarra
margotu dugunean,
ispiluan nire izena
idatzi duzunean,
irratia piztu eta
doinu hau entzutean,
begietara begira
hauxe nahi dizut esan:

Maite zaitut...

## 28- ALDAPAN GORA

Mendian gora, burua
galtzen dut maiz herriko
kaletan sarritan galdu izan
naiz. Nork bereizi zituen
kultura, lurra sua ta ura?
Gizakion arteko lotura, ere
ez al da natura?

**Aldapan gora, pausorik**
**pauso aldapan behera,**
**auzorik auzo gaztainondo**
**ta pago eskultura arraro,**
**kaleak edo mendiak** zerk
galtzen gaitu gehiago?

Berriro galduta gabiltza, hau
da hau marka ezin da ulertu
aurrean daukagun mapa.
Euskaldun peto peto bai,
baina ardi galduen pare
nahiago det ibili halare,
norabiderik gabe!
Aldapan gora, pausorik
pauso aldapan behera,
auzorik auzo gaztainondo ta
pago eskultura arraro,
kaleak edo mendiak zerk
galtzen gaitu gehiago?

Aldapan gora…

Aldapan gora, pausorik
pauso aldapan behera,
auzorik auzo gaztainondo ta
pago eskultura arraro,
kaleak edo mendiak zerk
galtzen gaitu gehiago?

**29- HABANERA**

Berriro itzuliko balitz
Iragan denbora arrotza
Berdin kontsumi nezake
Banilla gozo artean,
Itsaso urrun batetan
Irudimena galdurik
Udaberriko euritan
Larrosak pizten ikusiz.

Osaba komertzianterik
Ez nuen izan Habanan,
Pianorik ez zegoen
Bizi nintzen etxe hartan,
Neskatxen puntilla fiûak
Udako arratsaldetan,
Errosario santua
Neguko gela hotzean.

Ezpainek gordetzen dute
Ezpain bustien gustoa
Desiozko hotzikaran
Etsipenaren tamalez,
Gaua zelatan dakusat
Kontzientzia bilutsik
Badoaz orduz geldiak
Gogorapenen hegalez.

Jaio ginen, bizi gera
Ez dugu ezer eskatzen
Itsasontzia astiro
Kaiatik ari da urruntzen.
Antillak zintzilik daude
Argazkien paretetan
Karta bat idatziko dut
Norbaitek erantzun dezan.

Tabako, ron ta kanelaz
Girotutako arratsetan
Algarak entzuten ziren
Habanako putetxetan,
Abanikodun mulatak
Gauari haize egiten
Musiken aide nagiek
Odola erretzen zuten.

Jaio ginen, bizi gera
Ez dugu ezer eskatzen
Itsasontzia astiro

Kaiatik ari da urruntzen.
Antillak zintzilik daude
Argazkien paretetan
Karta bat idatziko dut
Norbaitek erantzun dezan.

**<u>30-AGURE ZAHARRA</u>**

Agure zahar batek zion
bere etxe aurrean
goizean goiz lantokira
irteten nintzanean:

Ez al dek, gazte, ikusten
gure etxola zein dan?
desegiten ez badugu,
bertan galduko gera.

**Baina guztiok batera**
**saiatu hura botatzera,**
**usteltzen hasita dago-ta,**
**laister eroriko da.**

**Hik bultza gogor hortikan,**
**ta bultza nik hemendikan,**
**ikusiko dek nola-nola**
**laister eroriko dan.**

Baina denbora badoa,
nekea zaigu hasi,
eskuak zartatu zaizkit,
eta indarrak utzi.
Usteltzen badago ere,
karga badu oraindik,
berriz arnasa hartzeko
esaigun elkarrekin:

**Baina guztiok …**

Agure zaharra falta da
gure etxe ondotik,
haize txar batek hartu ta
eraman du hemendik.
Haur batzuk ikusten ditut
eta inguraturik,
aitona zaharraren kanta
nahi diet erakutsi:

**Baina guztiok …**

**<u>31-NAVARRA TIENE CADENAS</u>**

**“Navarra tiene cadenas,**
**Por a dentro y por afuera,**
**las del escudo son nuestras,**
**las de fuera son impuestas.**

Sancho el Fuerte, Sancho el Fuerte
si viviera uniría a los navarros
pa romper esas cadenas.
Y ahora ya no son los moros
que atacan nuestras fronteras,
ahora se llaman cristianos,
van vestidos de chisteras.

**(Navarra tiene cadenas…)**

En el 1512 el duque de Alba entró
con su ejército en Pamplona
partiendo Navarra en dos.
Desde entonces en Navarra
el rey de Castilla mandó.
Se rieron los monarcas,
pero navarra lloró.

**(Navarra tiene cadenas…)**

La historia la hace el pueblo
y la escriben contrabandistas.
Cuentan lo que les conviene
y lo adornan con mentiras.
Pero un lema nos dejaron
los infanzones de Obanos:
ser libres en patria libre
que Navarra no ha olvidado.

**(Navarra tiene cadenas…)**

## 32- JOHN ZAHARRA

Etxerako ordua
iritsi zaigu John Zaharra
Kanta zagun azkena
alaitzeko gure bidea

Zenbat kanta, zenbat hitz
Lagunak lagun truke
Biharko ere zerbait
utzi beharko genuke

Etxerako ordua
iritsi zaigu John zahara
kanta zagun azkena
alaitzeko gure bidea

Gure emaztetxuak
lo hartuta leudeke
ai zer gau goxua
ezkonduta bagendeuke

Etxerako ordua
iritsi zaigu John zaharra
kanta zaigun azkena
alaitzeko gure bidea

Etzaitez hasi orain
maitasunaren eske
ilargiaren lagun
zeruraino joan gintezke

Etxerako ordua
iritsi zaigu John zaharra
kanta zagun azkena
alaitzeko gure bidea.